# Euskal Herriak Askatasuna behar du!
# Aski da!

Euskal Herriaren desagerpena helburu duten horiek beraien jarduera errepresiboarekin itsu itsuan jarraitzen dute. Herri honek bizi duen gatazka politikoaren muinera jo eta eskubideen aitortzan oinarrituriko soluzio bat bilatu beharrean, jardun polizial eta judizialen bidez eskubideen ukazioan oinarrituriko eszenatoki baten alde egin dute, errepresiorik basatiena erabiliz independentziaren aldeko borroka amaitzeko helburu bakarrarekin.

Errepresioaren fronte guztiak irekiak dituzte horretarako. Euskal preso politikoak suntsitu nahi dituen espetxe politika bortitza, gaixotasun larriak dituzten presoak, bizi arteko zigorra eta sakabanaketa izanik honen adierazpen gordinenak. Biltzeko eta antolatzeko eskubidearen ukapena, ilegalizazioen eta eguneroko debekuen bidez. Komisaldegietan tortura metodo basatienen erabilpena militante independentisten aurka. Rubalcabak diseinatu eta entzutegi nazionalak zuzentzen dituen gazteen aurkako polizia operazioak, euskal gazteak atxilotu, torturatu, espetxeratu eta sakabananatzeko ondoren.

Euskal Herriak bizi duen polizia okupazio itogarria, kontrolak, militanteen aurkako jarraipen eta jazarpena, euskal iheslari politikoen atxilotze eta espainiaratzeak, ehundaka euskal herritar auziperatuak dauden makroepaiketa politikoak. Hauek eta beste zenbait dira gobernuek Euskal Herriaren aurka ireki dituzten frente errepresiboak. Baina zein estatu demokratikotan ikusten dira euskal herrian egunero egunero erabiltzen diren salbuespeneko neurri hauek?

Errepresioan sakontzeko bidea hautatu duten honetan ezinbestekoa zaie errepresioa ikustezin bilakatzea. Errepresio basatiena nahi bezala erabiltzeko, nahitaezkoa zaie errepresioaren salaketa ezabatzea. Presoak espetxeetan suntzitzeko beharrezkoa zaie presoekiko elkartasuna eta babesa zigortzea, zailtzea, desagertzea. Guzti honi eta ez beste ezeri erantzuten dio entzutegi nazionalean Amnistiaren Aldeko Mugimenduaren aurka burutu duten epaiketak. Egurra ematen jarraitu ahal izateko, hau salatzen duena isildu beharra dute.

Errepresioak min asko eragin du gure herrian, hori ez dugu inoiz ezkutatuko. Ehundaka dira hildakoak, milaka atxilotuak, torturatuak eta espetxeratuak. Malko asko bota ditu herri honek, sufritu egin du eta sufritzen ari da. Baina urte guzti hauetan zerbait argi gelditu bada ondokoa izan da: Errepresioa antzua da bere helburu politikoei dagokionez. Errepresioa ez da gai izan independentziaren aldeko eguneroko lanarekin amaitzeko. Errepresioak ez du disidentzia politikoa ezabatu.

Amnistiaren Aldeko Mugimenduaren aurkako epaiketan auziperatuek izan duten jarrerak isladatzen du azken 30 urteotan herri honetako zati handi batek izan duena. Jarrera duina, zintzoa. Zapaldu nahi gaituenaren aurrean belaunikatu baino borrokan jarraitzeko jarrera. Isildu nahi gaituenaren aurrean mututu baino, ohiukatzen jarraitzeko jarrera.

Errepresioa jasaten duenari elkartasuna. Errepresioa erabiltzen duenari salaketa eta presioa. Hori da urtez urte Amnistiaren Aldeko Mugimenduak egin duen lana, eta hori da aurrera begira indartu behar dugun jarduna. Preso bakar bat espainiar edo frantziar sarraski espetxeetan dagoen bitartean lanean jarraituko dugu. Errepresioak herri hau bakean uzten ez duen bitartean borrokan jarraituko dugu.